# ETApm-ren autodisolbatzea.

*Este trabajo ha sido convertido a libro digital*
*por militantes de* EHK,
*para uso interno y forma parte del*
*material de trabajo para el estudio e*
*investigación de la historia del*
*MLNV*

**http://www.ehk.eus**

## ETApm-ren autodisolbatzea.

1984-KO otsailean, erakunde politiko-militarreko kide gehienek autodisolbitzea erabaki zuten. ETAm-ren esanetara ipinita, bere militante asko eta asko mili-en erakundean sartu ziren. Sektore honetako militanteek milikiak izena jaso zuten.

Beste sektorekoek, ETApm-ren barruan gutxienak izaki, zenbait ekintza burutuko zituzten erabat desagertu baino lehen. Erabaki harekin, ETApm-k hamar urteko historia gorabeheratsua amaitu zuen.

ETAm-k ez zuen 1977az geroztik ETApm ezagutzen, Komando Bereziak mili-en erakundean sartu zirenetik hain zuzen. Ondorioz, 1984ean «ETApm VIII. Biltzarreko» militanteek banan-banan sartu behar izan zuten ETAm-n, eta ez erakunde bezala, zazpi urte lehenago berezi-ek egin bezala.

Nahiz eta guk hemen «autodisolbitze» terminoa erabili dugun, idazki haren izena «ET A pm -ren agiria Euskal Herriari» izan zen.

**-ETApm-ren autodisolbitzea-**

Gaur arte geure buruari ETApm deitzen genion kolektibo honek jakin arazi nahi dio Euskal Herriari eta eritzi publiko osoari burruka armatua praktikatzen duen erakunde politiko gisa autodisolbitzea erabaki dugula eta erakunde horí osatzen dugun guztiok ETA Nazio Askapanerako Euskal Erakunde Sozialista Iraultzailearen zerbitzuan jartzea banaka banaka.

Gure kolektiboaren barnean hiru urtez aritu garen azterketa sakonaren ondorioak hauexek izan dira:

1) Barnean ziren kide erreformisten egozketa,

2) Geroago, KAS alternatiba taktiko-estrategikoa onartzera eta euskal prozesu iraultzailearen barnean integratzera bultzatu gaituen gure trajektoria politiko okerraren autokritika eta erreflexionatua eta,

3) Erakunde bezala autodisolbatzeko erabakia azkenik, ETA erakundeari eskeiniz gure militantzi iraultzailea.

1976.az geroztik gure erakunde pm-aren historia egiterakoan zera esan behar da, bere desegitea, hasieratik finkatuta zegoela. Halere, baieztapen hau argitzeko, 75.az geroztik, kronologikoki emandako gertaerak aipatuko ditugu.

1975. urtean egin zen analisian esan zen trantsizioa demokrazia burgeserantz izango zela. Honen ondorioz eta kojuntura berriaren aitzinean «Bloke PM» **mekanisimoa eraiki zen**; hau da, teorian, gure Erakunde Armatua, alderdia (EIA) eta Masa erakundeak organikoki artikulatuko zituen mekanismoa. Bainan, azken finean, mekanismo horrek balio izan zuen, hauetako batek, alderdiak, gisa honetako teorietan oinarrituz, «Alderdia abangoardia izango da eta, Erakunde Armatua, herri koí garaipenen zaindaria», Erakundea erabiltzeko bere probetxuan, ondoko bi arrazoi hauengatik:

- Burruka armatuaren prestijioa aprobetxatuz, projektu politiko bat, sozialdemokrata, bultzatu nahí izatea; bere kontrolpean edukiz. denbora guziz, aparatu militarra eta, gero aipatuko ditugun konnotazioekin, erakunde honen desegitea prestatuz erdi eperako.
- Bere projektu politikoa aurrera eramateko ekintza armatuaren bidez ekonomikoki finanziatzea.

Nahiz eta baieztapen honek burugabea eta sinplea dirudien, ez da horrela, 76.az geroztik gertatutako guztia, urratsez urrats xehatzen baldin badugu. 76.ean blokea osatuta geratzean, EIA alderdiko zuzendaritzak bere egoera ziurtatu nahi du Erakunde armatuaren aurrean, berak nahi duen bezala manipulatzeko eta, ez dadin gerta nolabaiteko kaltea ekar liezaiokeen «desbiaziorik».

Horretarako, taktika bikoitza erabili zuen:

- Erakundeaz egin diren planetaz jakitun den konfidantza osoko jendea jarri Erakundeko zuzendaritzan. Horretarako, «erbesteratu» egin zen zenbait, inolako beharrik eduki ez arren.
- Zuzendaritza bikoitza erabili; hots, alderdia eta Erakunde arteko zuzendaritza batua izanik, alderdia da Erakundeak egin behar duen ekintza mota eta unea erabakitzen dituena.

Era honetan, alde batetik Erakundea bahituretan eta «arresto ekonomiko» delakoan espezializatu zen; eta bestetik, irudi bat emateko, eta alderdiaren morrontzan jarriz, Erakundearen izateko arrazoia ezkutatzeko, ekintza sektorialez osatutako dinamika motan sartu zen.

Bitartean, EIAk, bere alderdizko tesiak oso urrun utzi zituen eta, bai organikoki, bai politikoki, erreformazko prozesua hasi zen. Lehen momentuan, Erakunde, alderdi eta Masa erakundeek osaturiko katea hautsiz. Horretarako atzean utzi zituen herrikoi organismo guztiak, ez baitzitzaizkion balio bere etapa berrirako, eta ezker abertzale rupturistaren aurrerapenagatik ez zituelako kontrolatzen. Organismo hauetatik alde egin ondoren (Gestorak, ASK ... ) 180 gradutako itzulia eman zion bere politika sindikalari, eta kuadroz osatutako alderdia izateari utziz, EE bezala, masa alderdi gisa antolatu zen sistemaren engranaian erabat sartuz, alderdi erreformista guztien (PNV, UCD, PSOE ... ) babesa eta asmo onak zituela.

bere indartzeak haren zatiketa ekar lezake. KAS alternatiba iraultzaile-rupturistaren kaltetan, eta ETA ri kolpe gogorra eman liezaiokeen ondo planifikatutako montajea, hots, Bandres eta UCD ko bere lagunengandik egokitutako desertore eta traidoreen Operazioa.

Honaino bere maskara kenduz, EE k bere morroi izaera agerian utzi du; halere, oraindik, gai bat gelditzen zaio, hau da, burruka armatua suntsieraztea.

1980. urtean zuzendaritza batuak segitzen zuen. UCD gobernuan zegoen eta argumentuetan sartu gabe, EE ko zuzendaritzak gobernuaren burua erasotzea proposatu zion Erakunde armatuari. Erakundeak (oso «hartzailea»). horrela egin zuen, bainan gobernuan zegoen alderdiko buruzagi zenbait garbitzean, Eeko zuzendaritza Erakundetik aldentzeko abagaduneaz profitatu zen, honi erasoz eta publikoki horren aurka hitz eginez eta, era berean, Erakundearen aurrean buru zuritzeko oso urrutira joan zela esanez.

Une honetan sortzen dira, hain zuzen,<< bloke >>aren barnean lehenbiziko besteiritziak eta tirabirak, eta halaber, gure Erakunde armatua desegintzeko asmoz oinarriak ipintzen hasten dira, zeren, bat egin ditzakeen gauza bakarra diru kontuak dira eta arazo hau dagoeneko konponduta daukate beste bide batzuetatik; hartutako babesarengatik ote?

Horretarako operazioa treguarako deiaz hasi zen eta ekinkideria nahasteko erakunde birmoldaketa premia erabili zuten, eta bere dinamika lasatzeko eta iheste erreformisten operazioa antolatzeko balio zuen. Tregua dei hau Otsailak 23arengatik aurreratua izan zen.

Geldialdi honek iraun zuen tartean, ekinkideriak argi ikusi zuen lehen aldikotz, egin zioten saldukeria eta ondorioz egonezina areagotuz joan zen.

Dena den, eta alderdiak beste diru iturriak eduki arren, bere barnean begi onez ikusi zuten esperientziaz eta ahalmenaz profitatzea, hasieratik antolatutako aginduekin erakundearen ildoarekin bat zetorren ekintza bat burutzeko. Gainera, ekintza hori, historia disdiratsuaren kolofoia izango litzateke.

Talde mafiosoei egokiago zegokien ekintza hau txarto burutu zenez, VIII. Biltzarrerako dei egin zuten prozesua azkartuz. Azaletik irudi lezake biltzar honen arrazoia treguaren hausturan zetzala, bainan egiazko zioa burruka armatuan, berean, zetzan; eta ondorioz eta isladaz, bi estrategietan eta bi ideologia ezberdinetan.

Operazio likidazionista buruturik, bereganatze erreformistaren operazioari hasiera eman zioten, bi ardatzetan oinarriturik. Bata, EE ri zegokiona, gobernuan zegoen partiduarekin operazio honetan sartzen zirenen alde juridiko eta sumariala aztertuz eta, bestea, gaur egun oraindino ilun dagoen negoziaketa eta, operazioaren zama politiko guztia zihoakiona. Bigarren hau Parisen gauzatu zen desertoreetako bi kide eta "Cuerpo Superior de Policia» delakoaren goi mailako bi kideren artean.

Han hitz egindakoaz gaur egun arte ez da ezer jakin. Bainan hori bai, emaitza lortuta zegoen jadanik. Maila politikoan burruka armatuaren aurkako toxikapen kanpaina lau haizetara aldarrikatu eta barreiatu zuten, Operazio hau, demokraziaren erakusle goren gisa aurkeztuz. Erakunde mailan, kolaborazionistek ezagut zezaketen erakundearen atal ororekin apurtzea ekarri zuen, zeren gertakizunek atal horiek kolokan jarri baitzizituzten.

Era honetan, historia labur bat buruturik dago; historia ilun eta zikina EE ren partetik, Euskal Herri Langilearen traiziozkoa eta, interes pertsonalek zuzendutako burruka; tortura eta espetxea jasan duen ekinkideriaren burrukatik sorturiko partiduaren historio ustela. Bitartean, partiduaren burokrazia, lehia ziztrinak gertatzen ziren aparatoetan ardurazko postuez jabetzeko, dimisioaren mehatxuak erabiliz; alderdiaren patua gaur egun eskaintzaile onenaren

Dena den gure historia ez da hemen bukatzen oraindik, KAS alternatiba taktikoaren inguruan dagoen jokabide politiko rupturistak soilik finka ditzakeela demokrazi normaleztapenezko hitzarmenaren oinarriak onartu ondoren eta, gure hutsuneaz argi jabetu ondoren, egon badago, zenbait jende sigla bakanetan (hots, Auzolan) ezkutaturik jadanik itzalitako zuzia hartzen saiatzen dena. Projektu berriez baliaturik, edozein ikuspegitik nahasiak eta abiapuntutik egiten saiatuko diren gauza bakarra oztopoak jartzea eta ezker abertzalean jadanik mugaturiko prozesuaz era oportunistan profitatzea izango da. Barregarria da porrot hutsean murgildutako alderdiak nola batzen diren ikustea: ideologia ezberdinekin, bakoitzaren pertsonalkeriaren eragi ez errenka abiatzen den estrategia erkidea osaturik, eta hau, ez dugu hitzetik hortzera esaten. Gu projektu honetan sartu nahi izan gaituzte eta entzun ditugu alderdi bakoitzak (NI, LKI, LAIA) besteei egiten zizkien kritikak.

Zazpi urtetako historiaren sapore mingotsarekin, Politiko Militar Erakundeko militante kontsekuenteak gure errespontsabilitate historiko eta prozesu honen partaide izan garenez gero, doakigun erabateko autokritika onartu beharrean gaude.

Guzti honengatik, eta Euskal Herri Langileari bere nazio eta gizarte askapenerako prozesuan indarrak ematen dizkioten interesei buruz egindako eztabaida sakon eta argigarriaren ondorioz, geure okerra onartzen dugu eta, soilik KAS ek propugnatzen duen ideologia, estrategia eta erakunde eta politik markoaz jabetzeak erraztu egin dezake gure sartzea euskal prozesu iraultzailean.

Euskal Herri langilearen Nazio eta Klase nahikundeen aurkako jukutria sasi-iraultzailea sortzen eta garatzen ikusi duen gure kolektiboak bere eskuetan dagoena eskaini nahi du, halaber ezker abertzalearen barnean atal berriak batzen lagundu.

KAS eko erakunde guztiekiko gure laguntza aldarrikatzen dugu, baita ere Herri Batasunari, eta Euskal Herriari publikoki eskatzen diogu bere uste osoa eman diezaiola, uste baitugu alternatiba bakarra dela Euskal Herri Langileak jasaten dituen arazo latzei amaiera emateko eta Euskal Estatu Sozialistaren eraiketan aurrera jotzeko.

Euskadi, 1984eko otsaila